# U12 BILBORA

EUSKAL PRESOAK EUSKAL HERRIRA

Egun on eta eskerrik asko etortzeagatik.

GIZA ESKUBIDEAK. IRTENBIDEA. BAKEA. Hitz handiak, edukiz beteak; gure herriak bizi duen garai politiko berrian guztion ilusioa eta esperantza pizteko gai diren hitzak. Munduaren luze-zabalean beste herri askotan ekarri zuten bezala, konponbide haizea dakarte gurera.

Urte asko daramatzagu gatazkaren ondorio larriak pairatzen. Azken garaiotako gertakariek, ordea, tunelaren bukaerako argi-printzarekin amestera eraman gaituzte; aukera berriak zabalik dira Euskal Herrian gatazka-egoera atzean utzi eta guztion artean bake egoera justu bat eraikitzeko.

Bakegintzan sakontzeko oinarri sendoa ezarri du, batetik, Donostian egin zen nazioarteko Bake Konferentziak, eta, bestetik, bertan sinatutako adierazpenari erantzunez, ETAk behin betiko armak uzteko hartutako erabakiak. Orain guztion ardura da irekitako prozesuari hauspoa ematea eta zehaztutako bide-orria bultzatzea. Zentzu horretan, Aieteko Adierazpenaren bigarren puntua gatazkaren ondorioei dagokiona da, hain zuzen ere.

Hortaz, ezinbestekotzat jotzen dugu gatazkaren ondorioz preso edo erbesteratuta dauden herritarren egoeran arreta jartzea. Izan ere, Euskal Herritik ehunka kilometrotara sakabanatuta daude oraindik, eta horrek ondorio larriak dakartza, bai preso eta erbesteratuentzat, baita hauen senide eta lagunentzat ere.

Une historiko honetan arduraz jokatzea dagokie frantziar eta espainiar gobernuei. Horregatik, giza-eskubideak betetze aldera eta gatazkaren irtenbidean aurrera egin ahal izateko, honakoa galdegiten diegu:

1. Euskal preso eta erbesteratuak Euskal Herrira ekartzea
2. Gaixotasun larriak dituzten presoak libre uztea
3. Espetxe-zigorrak luzatzeari utzi eta bizi osorako espetxe zigorra dakarten neurriak indargabetzea
4. Preso eta pertsona gisa dagozkien eskubide guztiak errespetatzea

Aldarrikapen horiei bultzada eman asmoz gaur hemen bildu gara eremu ezberdinetatik gatozen sustatzaileak, eta herritar guztiei dei egin nahi diegu Bilbon urtarrilaren 12an, 17:30etan Casillatik hasita egingo dugun manifestazioan parte-hartzera, benetan erraldoia izan dadin. “GIZA ESKUBIDEAK. IRTENBIDEA. BAKEA. EUSKAL PRESOAK EUSKAL HERRIRA” lelopean Bilboko kaleak bete behar ditugu, herritar-uholdeak Madril eta Pariseraino eraman dezan konponbidearen aldeko olatua.

Era berean, ziur gaude hauteskundeen osteko agertoki berriak eragile sozial eta politiko ezberdinen atxikimendu zabala ahalbidetuko duela, eta horiei ere dei berezia luzatu nahi diegu, publikoki azal dezaten manifestazioaren eta aldarrikatutako oinarrizko eskubideen aldeko jarrera.

Lainoak nahinora doaz, baina gu, baina gu herrira goaz!